# URTEAN ZEHARREKO XVII. DOMEKA
## A urtean

### I. IRAKURGAIA

*Zuzen gobernatzeko jakituria eskatu dozu.*

Erregeak liburutik

*1 Erg* 3, 5. 7-12

Egun hareetan, Jauna agertu jakon amesetan Gabaonen Salomoni, eta esan eutson: «Eskatu nahi dozuna, eta emongo deutsut».

Salomonek erantzun eutson: «Jauna, ene Jainkoa, nire aita Daviden ordez ni, zeure zerbitzari hau, egin nozu errege. Ni, ostera, gaztea naz eta ez dakit zelan gobernatu. Zure zerbitzari hau Zeuk aukeratu dozun herriaren erdian dago, herri izugarria, ugariaren ugariz ezin konta ahalekoa. Emoiozu zeure zerbitzari honi adimen argia, zure herria gobernatzeko, eta ona eta txarra bereizteko. Bestela, zelan gobernatu zure herri handi hau?»

Atsegin izan jakon Jaunari Salomonen eskaria, eta esan eutson: «Hori eskatu dozulako, eta ez zeuretzat urte asko, aberastasunak edota zeure arerioen heriotza, ezpada ze zuzen gobernatzeko

jakituria eskatu dozulako, beteko dot zuk eskatua; zure aurretik inork izan ez dauan eta zure ondoren be inork izango ez dauan adinako jakituria eta adimena emongo deutsut».
Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 119 [118], 57 eta 72. 76-77. 127-128. 129-130 (R/. 97a)

R/. **Bai maite dodala, Jauna, zure legea!**

V/. Jauna, ene ondasun bakarra,
erabagia dot zure hitzak gordetzea.
Zein ona niretzat zure ahoko legea,
urre-zidarrezko milaka txanpon baino hobea. R/.

V/. Arren, kontsolatu nagiala zure maitasunak,
zeure zerbitzari honi agindu deutsazunez.
Betorkit zure errukia, bizibarritu nadin,
zure nahian dot-eta gozamena. R/.

V/. Nik, ostera, maite ditut zure aginduak,
urrerik finena baino gehiago.
Horregaitik, zuzentzat ditut zure lege guztiak,
eta gorroto ditut jokabide maltzur guztiak. R/.

V/. Harrigarri dira zure aginduak;
horregaitik ditut gogoan gordetzen.
Argigarri da zure hitzen adierazpena,
adimena emoten deutse ezikasiei. R/.

## II. Irakurgaia

*Jainkoak aukeratu ginduzan,*
*bere Semearen irudiko izan geintezan.*

San Paulo Apostoluak Erromatarrei egindako epistolatik

*Erm* 8, 28-30

Senideok: Badakigu bera maite dabenen onerako bideratzen dituana Jainkoak gauza guztiak, bere aurre-erabagiaz dei egin deutsenen onerako, hain zuzen be.

Aurrez ezagutu ebazanak aukeratu be egin ebazan, bere Semearen irudiko izan eitezan eta, holan, Semea senide askoren artean lehen-seme izan eiten. Aurrez aukeratu ebazanei deitu be egin eutsen; deituak, barriz, zuzentzat hartu, eta zuzentzat hartuak aintzaz bete.

Jaunak esana.

## Aleluia

Ik. *Mt* 11, 25

R/. **Aleluia.**
V/. Bedeinkatua Zu, Aita, zeru-lurren

Jauna,
erreinuari buruzko Barri Ona
jente apalari agertu deutsazulako. R/.

## EBANJELIOA

Ebanjelio hau era laburrean ik. honen ondoren.

*Dituan guztiak saldu eta soloa erosten dau.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 13, 44-52

Aldi haretan, Jesusek esan eutson jenteari: «Zeruetako erreinuagaz soloan ezkutatuta dagoan altxorrarekin bezala gertatzen da. Norbaitek, aurkiturik, barriro ezkutatzen dau eta, pozaren pozez joan, dituan guztiak saldu eta ha soloa erosi egiten dau.

Era berean, zeruetako erreinuagaz, harribitxi bila dabilen merkatariagaz lez gertatzen da. Balio handiko bat aurkitzen dauanean, joan, bere gauza guztiak saldu eta erosi egiten dau.

Era berean gertatzen da zeruetako erreinuagaz, itsasora bota eta mota guztietako arrainak batzen dituan sarearekin be. Beterik dagoanean, bazterrera ataratzen dabe eta, jesarrita, onak otzarara batzen ditue eta txarrak kanpora botatzen. Holan gertatuko da

munduaren azkenean: aingeruak etorri eta gaiztoak zintzoen artetik banatuko ditue eta su-labara botako. Han izango da negarra eta hagin-karraskada!

Jesusek itaundu eutsen ikasleei: «Ulertu ete dozue hau guztiau?» «Bai», erantzun eutsoen. Eta Jesusek: «Halandaze, zeruetako erreinuko ikasle egin dan lege-maisua, bere altxorretik zaharrak eta barriak ataratzen dituan etxeko jaunaren antzekoa da».

Jaunak esana.

M

Ebanjelioa era laburrean.

*Dituan guztiak saldu eta soloa erosten dau.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 13, 44-46

Aldi haretan, Jesusek esan eutson jenteari: «Zeruetako erreinuagaz soloan ezkutatuta dagoan altxorrarekin bezala gertatzen da. Norbaitek, aurkiturik, barriro ezkutatzen dau eta, pozaren pozez joan, dituan guztiak saldu eta ha soloa erosi egiten dau.

Era berean, zeruetako erreinuagaz, harribitxi bila dabilen merkatariagaz lez gertatzen da. Balio handiko bat

aurkitzen dauanean, joan, bere gauza guztiak saldu eta erosi egiten dau.

Jaunak esana.

______________________________________________M

__________________________________________B

# URTEAN ZEHARREKO XVII. DOMEKA

## B urtean

### I. IRAKURGAIA

*Jango dabe, eta hondakinak geldituko dira.*

Erregeak bigarren liburutik

*2 Erg* 4, 42-44

Egun hareetan, Baal-Xalixako gizon bat etorri zan, Eliseori, Jainkoaren gizonari, lehen-frutuak ekarriz: hogei garagar-opil eta gari barria bere zorroan. Eliseok esan eban: «Emon jenteari, jan dagian». Morroiak erantzun eutson: «Zer da hau, ostera, ehun gizonentzat».

Baina Eliseok barriro: «Emon jenteari, jan dagian, hau dino-eta Jaunak: "Jango dabe, eta hondakinak geldituko dira"». Banatu eban, beraz, morroiak ogia jentearen artean, jan eben eta hondakinak gelditu ziran, Jaunak esan eban lez.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 145 [144], 10-11. 15-16. 17-18 (R/. ik. 16)

R/. **Zabaltzen dozu eskua, Jauna,**
**eta asea emoten deuskuzu.**

V/. Goratu zagiezala, Jauna, zeure sorkari guztiek,
bedeinkatu zeure fededunek;
aitatu begie zure erregetza ospetsua,
berba egin begie zure ahalmenaz. R/.

V/. Zuri begira dagoz danak zain,
eta Zuk emoten deutsezu jaten euren sasoian;
zabaltzen dozu eskua,
eta bizidun guztiak onginahiz dozuz asetzen. R/.

V/. Zintzoa da Jauna bere bide guztietan,
leiala egintza guztietan.
Hurrean dago Jauna dei egiten deutsoenengandik,
benetan dei egiten deutsoen guztiengandik. R/.

## II. IRAKURGAIA

*Bat bakarra da gorputza, bat bakarra Jauna,*
*bat bakarra sinismena, bat bakarra Bateoa.*

San Paulo Apostoluak Efesoarrei egindako

epistolatik

*Ef* 4, 1-6

Senideok: Nik, Jaunagaitik preso nagoan honek, eskatzen deutsuet, bizi zaitezela hartu dozuen bokazinoari dagokionez. Izan beti apal, otzan eta jasankor, alkar maitekiro eroanez. Ahalegindu zaiteze Espirituak sortzen dauan batasunari eusten, bakearen lokarriz.

Bat bakarra da gorputza eta bat bakarra Espiritua, Jainkoak egin deutsuen deiari dagokion itxaropena be bat bakarra dan lez. Bat bakarra Jauna, bat bakarra sinismena, bat bakarra Bateoa; bat bakarra guztien Jainkoa eta Aita, guztien gainetik dagoana, guztien bidez dihardduana eta guztiengan bizi dana.

Jaunak esana.

## Aleluia

*Lk* 7, 16

R/. **Aleluia.**
V/. Profeta handia sortu da gure artean,
eta Jainkoa bere herria salbatzera etorri da. R/.

## EBANJELIOA

*Jesarritakoen artean banatu ebazan ogiak, nahi adina.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Joanen liburutik

*Jn* 6, 1-15

Aldi haretan, Galilea edo Tiberiadesko itsasoaz beste aldera joan zan Jesus. Jentetza handia joiakon ondorik, ze, ikusten eben zelako ezaugarriak egiten zituan gaixoengan.

Jesus, orduan, mendira igon eta bertan jesarri zan ikasleekin. Hurrean zan Pazkoa, judeguen jai nagusia. Jesusek, jente asko etorkiola ikusirik, esan eutson Feliperi: «Non erosiko dogu ogia honeei jaten emoteko? (Zirikatzeko esan eutson hori, ze, ondo ekian zer egin behar eban). Felipek erantzun eutson: «Berrehun denarioren ogia ez litzateke nahiko izango, bakotxak zati bat izateko».

Ikasleetariko batek, Simon Pedroren anaia Andresek, esan eutson: «Bada hemen bost garagar-ogi eta arrain bi dituan mutiko bat; baina zer da hori horrenbesterentzat?» Jesusek jentea jesarriazotzeko agindu eutsen ikasleei.

Bedar ederra zan leku haretan eta

danak jesarri ziran. Bosten bat mila gizonezko ziran.

Jesusek ogiak hartu eta, esker oneko otoitza esan ostean, jarritakoen artean banatu zituan, eta bardin arrainak be, nahi beste. Ase ziranean, Jesusek esan eutsen ikasleei: «Batu egizuez geratu diran zatiak, ezer galdu ez dadin». Batu zituen, bada, eta hamabi otzara bete ebezan bost garagar-ogietatik jan ebenek itzitako hondakinez.

Jenteak, orduan, Jesusek egindako ezaugarria ikusirik, zera inoan: «Hauxe da, benetan, mundura etortzekoa zan profeta». Jesusek, ostera, errege egiteko, indarrez eroan gura ebela oharturik, mendira alde egin eban barriro, berak bakarrik.

Jaunak esana.

C

# URTEAN ZEHARREKO XVII. DOMEKA
## C urtean

### I. IRAKURGAIA

*Ez zaitez hasarratu, ene Jauna,*
*hizketan jarraitzen badot.*

Hasiera liburutik

*Has* 18, 20-32

Egun hareetan, Jaunak esan eban: «Izugarria da Sodomaren eta Gomorraren kontrako salakuntza, eta larriegia uri horreen pekatua. Salakuntza hori egia ala guzurra dan ikusi behar dot».

Gizasemeek handik urten eta Sodomarantz jo eben; Abraham, barriz, Jaunaren aurrean zutunik gelditu zan. Hurreraturik, esan eutson Abrahamek: «Benetan, errubakoa be galdu egin behar ete dozu errudunagaz batera? Beharbada, badira berrogeta hamar errubako urian. Horreek be galdu egin behar ete dozuz? Ez ete deutsazu parkatuko uriari berrogeta hamar errubako horreekaitik? Ospa zugandik holakorik egitea, errubakoa errudunagaz batera hilazotea! Zelan jokatuko dozu, bada, bardin batagaz zein besteagaz? Zuk ez holakorik! Munduaren epaileak ez ete dau zuzenbiderik egingo?»

Jaunak erantzun eutson: «Sodomako uri barruan berrogeta hamar errubako aurkitzen baditut, uri osoari parkatuko deutsat hareekaitik».

Eta Abrahamek barriro: «Ausardia da benetan hauts eta errauts nazan honek neure Jaunari hitz egitea. Jazo leiteke berrogeta hamarrera heltzeko bost falta izatea; uri osoa hondatuko ete dozu bost horreekaitik?» «Ez –erantzun eutson Jaunak–, ez dot hondatuko, urian berrogeta bost aurkitzen baditut». Oraindino be Abrahamek: «Jazo leiteke berrogei besterik ez izatea». Jaunak erantzun: «Ba, ez dot hondatuko berrogei horreekaitik».

Orduan, Abrahamek esan eutson: «Ez zaitez hasarratu, ene Jauna, hizketan jarraitzen badot. Jazo leiteke hogeta hamar besterik ez izatea». «Ez dot hondatuko, hogeta hamar aurkitzen baditut», erantzun eutson Jaunak. Abrahamek barriro: «Badakit ausartegia nazala; baina jazo leiteke hogei besterik ez izatea». Jaunak erantzun: «Ez dot hondatuko hogei horreekaitik». Eta Abrahamek: «Ez hasarratu, Jauna, beste behin berba egiten badeutsut. Jazo leiteke hamar besterik ez izatea». Jaunak erantzun eutson: «Ez dot hondatuko hamar horreekaitik».

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 138 [137], 1-2a. 2b-3. 6-7. 8 (R/. 3a)

R/. **Dei egin neutsunean, erantzun zeunstan, Jauna.**

V/. Eskerrak emoten deutsudaz, Jauna, bihotz-bihotzez,
nire hitzak entzun dozuzalako;
kantuz goratzen zaitut aingeruen aurrean,
eta zure tenplu santurantz begira ahuspezten naz. R/.

V/. Eskerrak emoten deutsadaz zure izenari,
zure maitasun eta leialtasunagaitik,
parebakoak egin dozuz-eta
zeure izena eta promesa.
Dei egin neutsunean, erantzun zeunstan,
kemena bizkortu bihotzean. R/.

V/. Gorena da, bai, Jauna,
baina umilari deutso begiratzen;
harroari, barriz, urrunetik igartzen.
Larrialdian aurkitzean,
bizia babesten deustazu arerioen amorruaren aurrean,
eskua luzatu eta salbatzen nozu. R/.

V/. Dana egingo dau Jaunak nire alde.
Jauna, zure maitasuna betikoa,
ez itzi bertan behera zeure eskuen lana!
R/.

## II. IRAKURGAIA

*Jainkoak biziazo egin zaitue Kristogaz batera,*
*pekatu guztiak parkaturik.*

San Paulo Apostoluak Kolosarrei egindako epistolatik

*Kol* 2, 12-14

Senideok: Bateoaren bidez, Kristogaz hobiratuak izan zarie, eta biztu be, harengan biztu zarie, ha hildakoen artetik biztu eban Jainkoaren ahalmenean sinistuz.

Sasoi baten, hilda zengozen zeuen pekatuakaitik eta erdainbakoak izateagaitik; baina Jainkoak biziazo egin zaitue Kristogaz batera, pekatu guztiak parkaturik. Gu gatxesten ginduzan epai-agiria hondatu egin dau eta, kurutzean josiz, ezereztu.

Jaunak esana.

## Aleluia

*Erm* 8, 15c

R/. **Aleluia.**
V/. Seme-alaba egiten zaituen Espiritua

hartu dozue,
eta Espirituaren bidez «Abba!», hau da, «Aita!»,
dei egiten deutsagu Jainkoari. R/.

## EBANJELIOA

*Eskatu, eta emongo deutsue Jainkoak.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 11, 1-13

Aldi haretan, Jesus otoitzean egoan leku baten; amaitu ebanean, ikasleetariko batek esan eutson: «Jauna, irakatsi eiguzu otoitz egiten, Joanek bere ikasleei irakatsi eutsen lez».

Jesusek esan eutsen: «Otoitz egitean, esaizue:

“Aita, santu izan bedi zure izena,
etor bedi zure erreinua,
emoiguzu egunean eguneko ogia,
eta parkatu gure pekatuak
geuk be zor deuskuen guztiei parkatzen deutsegun ezkero,
eta ez eiguzu itzi tentazinoan jausten”».

Gero, esan eutsen: «Jo dagigun, zuetariko batek lagun bat daukala eta gauerdian datorkiola, esanez: “Adiskide, emoidazak hiru ogi, bihurtuko deuazat-eta; lagun bat etorri jatak bidaian eta ez jaukat zer eskeini”. Emon dagigun, besteak barrutik erantzuten deutsola: “Itzi nagik bakean! Atea itxita jagok, eta umeak eta ni oheratuak; ezin naitekek emotera jagi”. Hauxe dinotsuet: adiskidea daualako ez bada be, aspergarri izan ez dakion behintzat, jagi eta emon egingo deutso behar dauana».

Hauxe dinotsuet, beraz: «Eskatu, eta emongo deutsue Jainkoak; bilatu, eta aurkituko dozue; jo atea, eta zabalduko deutsue; ze, eskatzen dauanak hartu egiten dau, bilatzen dauanak aurkitu, eta atea jotzen dauanari zabaldu egiten jako. Zuetariko nonork, aita izanik, semeak arraina eskatuta, sugea emongo ete deutso arrainaren ordez? Edota arrautza eskatuta, eskorpioia emongo ete deutso? Halandaze, zuek, gaiztoak izanik be, zeuen seme-alabei gauza onak emoten badakizue, zenbat gehiago ez ete deutse zeruko zuen

Aitak Espiritu Santua emongo eskatzen deutsoenei!»

Jaunak esana.